# KURUZBIDEA (I)



**Oharra:**

Kuruzbidea latza da. Askoren bizitza ere latza izaten da. Baina egoera honek ez dau azken-hitza. Bariku Santua ez da azkena. Barriro ere, Pazko-eguna etorriko da. Barriro ere Biztuera-eguna...

Baina bitartean asko jasan behar da. Geure bizitzako une larri guztiak jarri daiguzan Jesusen kuruzbide honetan.

Egin daigun Jesusen kuruzbide hau, geure kuruzbide guztiak eta Euskal Herriarenak harenagaz bat eginik. Jarri daiguzan Jesusen aurrean geuk kurutzeratzen doguzanak; gure gizarteak kurutzeratzen dauzanak, eta, geure erru zuzenaz ez bada ere, esplotatuak diranak, bortxatuak, bazterreratuak, gosetera eta pobreziara gaitzetsiak… Berba baten, isileko kurutzean josita dagozanak. Euren aldekoa gure otoitza.

**Egin daigun otoitz**

Jainko ona:
bizitzea emon eta bizitzan eusten deuskuzuna.
Zerk eragiten deusku heriotzara inor eroatea?
Zure Semeak, zure maitasuna erakustearren,
zure errukiaren iragarle izatearren,
isilean egiten dau heriotzarako bidea,
aintzarik handiena balitz lez.
Zure argitasunean jarraitu deiogula
geure bizitza ere besteen alde emoten dana izan daiten.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez. AMEN.

1. Egotaldia: **Jesus heriotzara epaitua**

***† Gurtzen zaitugu, Kristo, eta bedeinkatzen.***
***—Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.***

**Abestia:** Pilatok agindu dau
lapurren artean
untzez gogor josteko
Jesus gurutzean.

**OTOITZA:**

Eskerrik asko, Jauna, zure maitasunagaitik,
heriotzarainoko leialtasunagaitik.
Irakatsi eiguzu, zure antzera bizi izaten,
Zeurea lango maitasunez maitatzen,
zeure leialtasunez bizi izaten.
Errege bizi zara ta gizaldi eta gizaldi guztietan.

2. Egotaldia: Jesus kurutzeak zamatua

***† Gurtzen zaitugu, Kristo, eta bedeinkatzen.***
***—Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.***

**Abestia:** Sorbaldean harturik
Kurutze astuna
hiltzera orain doa
Jesus gure Jauna.

**OTOITZA**:

Ondo dakizu, Jauna, ze astun egiten jakun
geure bizitzako kurutzeak eroatea.
Nahiago izaten dogu besteei leporatzea,
errua inoren lepora jaurtitzea,
edo besteen kurutzeei ez-ikusia egitea.
Eta zu geure aurretik zoaz geure kurutzea hartuz
eta jarraitu deizugula eskatzen.
Ez zaidazala, Jesus, bakarrik itzi.

3. Egotaldia. Lehenengoz jausten da lurrera

***† Gurtzen zaitugu, Kristo, eta bedeinkatzen.***
***—Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.***

**Abestia:** Lurrera jausiten da
Jesus nekaturik
jasoten laguntzeko
ez da errukirik.



**OTOITZA:**

Lurrera jausi zara! Lur jo dozu!
Baina ez zara bertan gelditzen.
Ez dozu inor erruduntzen.
Beheratu egin zara
eta zeure makaltasunak onartzen dakizu.
Argi dozulako maite zaitula Aitak
eta indartzen zeure makaltasunean.
Ai onartuko baneuz neure makaltasunak
inori leporatu beharrean…!

4. Egotaldia: Jesus eta bere Ama aurrez aurre**.**

***† Gurtzen zaitugu, Kristo, eta bedeinkatzen.***
***—Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.***

**Abestia:** Agertzen jako Ama
negarrez bidean,
Ai zer samintasunak
bien bihotzean

**OTOITZA:**

Astuna zan zuk zeroian kurutzea…
Eta zelangoa ezarri zendun amaren bizkarrean?
Zelan eroango ete eban
Semea halango itxuran ikustea?
Hortxe ikusi daiket, Jauna,
zenbat kaltetu daikezan nire epelkeriak.
Neure samin eta kurutze bihurtuko dodaz, bai,
hain gogor astinduak diran
ama guztien negar-saminak.

5. Egotaldia: Jesusi laguntzera behartzen dabe Zirinearra

***† Gurtzen zaitugu, Kristo, eta bedeinkatzen.***
***—Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.***

**Abestia:** Simon Zirinetarra
hartzen dabe lagun,
Kurutze eroaten
ikasi dezagun.

**OTOITZA**:
Behartu egin geinkez beste bati laguntza emoten,
eta zelan eskertuko leuken laguntza hartzen dauanak!
Beharrizanak, ba, alkarganatu egin geinkez,
ez daiguzan gitxitzat jo.
Prest nengoke, Jesus, zure zirinear izateko…
Ba, entzun daidala behartsuen garrasia
eta hartu daidazala aintzat
euren artean lanean diharduenak.

## 6. Egotaldia: ***Jesusi arpegia garbitzen deutso Beronikak***

***† Gurtzen zaitugu, Kristo, eta bedeinkatzen.***
***—Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.***

**Abestia:** Pekataria nun da
zure errukia
Jesusi garbitzeko
malkoz arpegia.

**OTOITZA:**
Errez-errez zikintzen dogu inoren izen ona
geurea ez ikustearren zikinduta:
zelan darabilguzan agintariak edo nagusiak,
edo gizartean, lanean… arduradun diranak.
Beronikaren lana izan daitela nirea, Jesus,
neure buruaren kaltetan bada ere
beste edozeinen izen ona garbitzen ahaleginduz.



## 7. Egotaldia: Bigarrenez jausten da Jesus

***† Gurtzen zaitugu, Kristo, eta bedeinkatzen.***
***—Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.***

**Abestia:** Ludiko pekatuen
astunaren haundiz
gurutzepean Jesus
jausiten da barriz

**OTOITZA:**
Atsekabera garoaz, Jesus, zu jausita ikusteak
eta edozer egingo geuke zu jasoteko eta zuri laguntzeko…
Ez ete gara konturatuko zenbat eta zenbat,
eta ez hain urrun, geure artean baino
dagozan jausita, hilaren azkenera heldu ezinik,
edo izen ona galduta,
edo gogorkeria ta bortxakeria jasaten…?
Izan naitela gauza, Jesus,
egoera guztiotara nire begiak zabaltzeko
eta nire eskuak, laguntzaile, luzatzeko.

## 8. Egotaldia: Jerusalengo emakumeak negarrez.

***† Gurtzen zaitugu, Kristo, eta bedeinkatzen.***
***—Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.***

**Abestia:** Jerusalemgo alabak
ez Niri negarrik,
negar egidazue
pekatuagaitik

**OTOITZA:**
Bihotz samurrekoak dira emakumeak
eta bihotza hunkitzen deutse zure nekeak.

Baina zuk ez dozu behar inoren negarrik
danek ikusi daiela baino
zein leiala zaiakozan Aitari.
Gatx egiten jat, baina leial izan nahi dot
bizitza bera baino ere maiteago izanaz leialtasuna,
mundu honetako bazterreratuen gaineko nire negarra
benetakoa izan daiten, ez azalekoa.

9. Egotaldia: Hirugarrenez jausten da Jesus

***† Gurtzen zaitugu, Kristo, eta bedeinkatzen.***
***—Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.***

**Abestia:** Hainbeste neke-minez
ahul eginik Jauna
hirugarren aldian
emen jo dau lurra.

**OTOITZA:**

Bildur deutsat jausteari, Jauna,
ingurukoen barreak jasan behar izango dodazalako,
neure burua zaindu nahian dihardudalako.
Zuri ez deutsu ardura, Aitari leiala izateak baino,
eta, behin eta barriz jausten bazara ere
hainbestetan jagiko zara. Eta parkamena isuriko dozu
Aitaren errukiaren testigu izanik.

10. Egotaldia: Jesus bilutsik jarten dabe

***† Gurtzen zaitugu, Kristo, eta bedeinkatzen.***
***—Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.***

**Abestia:** Ludiaren aurrean
jantziak kendurik
hor dago Jesus ona
oso lotsaturik.



**OTOITZA:**

Zu bilozik ikusteak, Jauna,
neu lotsatzen nau, eta beste aldera begiratzen dot.
Eta horixe egiten dot
esplotazinoaren eta bortxakeriaren aurrean ere
kontsumitzaile hutsa agertzen nazanean
etekinik handiena lortu gura dodanean…
Hain gatx egiten jat ingurutik askatzea
eta Jainkoari zintzo izatea…!

11. Egotaldia: Jesus kurutzean josten dabe

***† Gurtzen zaitugu, Kristo, eta bedeinkatzen.***
***—Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.***

**Abestia:** Gurtzean josi dabe
zanak urraturik
hezurrak askatuaz
bere giltzetatik.

**OTOITZA:**

Neuk min hartzen dot, Jesus,
mailukada bakotxaren zarateaz,
eta min hartu gura izango neuke
gosez dagoen ume bakotxaren negarraz
edo aurrean erabilia dan emakumearenaz
edo esplotatua dan herrialde bakotxarenaz…
Baina horretarako, neure buruaren zaintzatik
behartsuaz errukitzera jatsi behar dot… jatsi!

12. Egotaldia: ***Jesus kurutzean hilten da***

***† Gurtzen zaitugu, Kristo, eta bedeinkatzen.***
***—Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.***

**Abestia:** Gurutzean jasota
minez aseturik
hil da Jesus maitea
gure onagaitik.

**OTOITZA:**

Heldu zara helburura, Jesus, heldu da "ordua".
Ulertuko ete dot dana emon dozula,
ez dozula ezer gorde zeuretzako
maitasuna besterik erakutsi ez dozulako?
Heriotzea bera dozu aintza, ez dozu beste beharrik,
bizitza emon dozulako aurkitzen dozu beterik,
Aitaren isiltasunean besarkaturik. Gora zu!

## 13. Egotaldia: ***Amak hartzen dau besoetan Jesus***

***† Gurtzen zaitugu, Kristo, eta bedeinkatzen.***
***—Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.***

**Abestia:** Semearen gorputza
jetsi dabenean
ai zer ezpata daukan
Amak bihotzean.

**OTOITZA:**

Hilotz, gorpu, amaren besoetan.
Irudi hori ikusi gura dot, beste aldera begiratu barik,
gosez hilten diran ume guztien amengan,
gerrarako, mehategietarako, erabilten diran
edo bortxatuak diran umeen amengan…
Baina hain ikusten ditut urrun…!
Eta zuk danekaz egin zendun bat,
eta guztiok garoazuz zeure bihotzean.



## 14. Egotaldia: Jesus hilobian jarria

***† Gurtzen zaitugu, Kristo, eta bedeinkatzen.***
***—Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.***

**Abestia:** Hobira dabenean
Jaunaren gorputza
itxaso samina da
amaren bihotza.

**OTOITZA:**

Zure hobiratzeaz dana amaitu da.
Hori uste eben nagusiek, agintariek
eta baita zeure lagunek ere:
batzuen pozerako, besteen atsekaberako.
Baina zugan iraun dirau biziak,
bizia bera zaralako
eta geugan ere iraun daike
geugan isuri dozulako.
Sinistu daidala, Jauna, bizi izan naiten!

## AMAIERA

Amaitu dot Kuruzbidea, Jesus. Heldu naz Golgotaraino zeugaz batera, eta gogoan izan dodaz nire inguruko kurutzeratuak. Baina zeozerk dinost ez dodala amaitu otoitza, zeuri begira geratu behar dodala, orain artekoa neuk nekiana izan dalako, eta zuk esan gura deustazuna entzun ez dodalako. Zeozerk dinost zeuri begira geratu behar dodala, zeuri begiratzen, zeuri entzuten, zeuk isurten dozun biziaz bizi izaten…

Besoak zabal agertzen zara, Jesus, gu guztiok zeure bihotz gainean estu-estu hartu gura izango bagindụzuz lez. Bihotz horren taupadetan hausnartu gura dot zure ikasle maiteak nekaldiaren kontakizunean dinoana.

Era harrigarrian agertzen zaiakuz han: zeurea da beti ekimena; zeuk agintzen dozu, galdetzen, baieztatzen, emoten: jaun eta jabe agertzen zara.

Zure buruko koroiak zure jauntasuna iragarten deusku; gure jauntasuna irrigarria dalako, eta lotsagarria, zeurea bihurtzeko lotsagarri eta irrigari ezarri badeutsue ere. Irainok ez dabe ezelan ere lausotzen edo iluntzen zurearen dirdirea.

Jauntasunean hasi eta amaitu dozu bizitza: Getsemaniko ortutik (lehen gizakia dogu hor gogoan) zure gorpua usain eder artean hobiratzen daben orturaino, zure jauntasuna Aitaren esana betetea zan. Atsekabea Getsemaniko orduan baino ez dau aitatzen zure ikasle maiteak; hortik aurrera, zure jauntasuna, zure jainkotasuna itzi gura dau argi, gudariei atzeraka eraginez zure «Neu naz!» ozenaz. Hamabi bider aitatzen dau zure erregetza; galdeketetan zeuk epaitzen dozuz zure epaileak, edo kezkatan eta lotsagarri izten.

Eta, harrigarriena, Jesus, zure jauntasuna, zure erregetza, ezerezera heltzen zaranean agertzen dala! Hau ulertezina, sinistezina egiten jaku. Eta horrexegaitik ahalegindu gara une hau, zure "ordua", desitxuratzen urte eta gizaldietan zehar.

Zure heriotzea ez da izan Aitaren nahia betetea baino, Idazti santuen arabera. Eta argi daukagu Aitak ez zaituna hilik gura! Handiak izan dira, eta dira izan, gure manipulazinoak: geugaitik hilten zarala esaten dogu, gure pekatuak garbitzeko edo ordaintzeko… Ez, Jesus: zu ez zara hil; zu ez zaitugu hil. Zure heriotzan argi geratzen da gure txarkeria, gure txikikeria eta gure "neukeria"ren ondorioa, eta zure eskuzabaltasuna: bizia emonez, beste dana emon ondoren arnasea isuriz amaitzen dozu aintzan.

Biztuerea zure zintzotasunaren ondorio eta sari lez ulertu dogu. Eta ez, Jesus: ez dozu behar berbizterik, zure biziak ez daualako etenik. Hau ulertuko baneu, Jesus, ez nintzateke horrenbeste arduratuko neure bizia zaintzeaz; edo arerioak nire ingurutik ezabatzeaz; edo nire ustea gauzetan, ondasunetan eta aberastasunetan jarteaz… Jainkoagandik hartutako biziak etenik ez dauala-ta, bizia emoteaz arduratuko nintzateke. Zeugaz bat egingo nintzateke!

Baina asko daukat oraindino horraino heltzeko. Ordu asko emon behar dodaz, Jesus, zure kurutzeari begira guzti hori neuretzeko… Ez daidala, ba, amaitu Kuruzbidea hemen, zu bakarrik itziz kurutzean. Haren oinetan agertzen diran zure Ama, ikasle maitea eta beste emakumeekaz batera neuk ere osotu daidala han hasi zan Elizea.



## GURE AITA

## BEDEINKAPENA

